# Irlandako gaelera

*Artikulu hau Irlandako gaelerari buruzkoa da; beste esanahietarako, ikus «Gaelera (argipena)».*

**Irlandako gaelera**,[1] **Irlandako gaelikoa**[1][2] edo **irlandera**[2][3] (hizkuntza hartan, *Gaeilge*) Irlandako jatorrizko hizkuntza da. Indoeuropar hizkuntzen familiaren barruan, gaelera hizkuntzen taldean sailkatuta dago. Historikoki irlandarrek hitz egin dute. Uhartean 130.000 inguru dira Irlandako gaelera lehen hizkuntza dutenak,[4] gehienbat mendebalde urruneko landa giroan; komunitate txikiak ere badira Irlandatik kanpo. Irlandera Irlandako hizkuntza nagusia izan zen, Erdi Aroan ingelesak iritsi arte. 1922an Irlandako Errepublikak (jatorriz Irlandako Estatu Askea deitua) independentzia lortu zuenez geroztik, Irlandako hizkuntza ofiziala da, ingelesarekin batera. 1998an, Ostiral Santuko Akordioaren ondoren, Erresuma Batuaren agintepean dagoen Ipar Irlandako hizkuntza gutxitutzat onartu zuten ofizialki, Ulsterko eskozierarekin batera. 2005eko ekainaren 22an Europar Batasuneko lan hizkuntzetako bat izendatu zuten legez, eta ofizialtasun horren indarraldia 2007ko urtarrilaren 13an hasi zen. 2007ko urtarrilaren 22an, Irlandako Errepublikako ministro zen Noel Treacyk Europar Batasuneko Ministroen Kontseiluko bilera batean erabili zuen lehendabiziko aldiz.

Komunitate eta Baserri Giroko Gaeltacht Departamentuaren arabera, 2003an 1.500.000 pertsonak hizkuntza horretan mintzatzeko behar adina zekitela ziurtatzen zuten. 2007an, uharteak zituen 4,3 milioi bizilagunetatik % 40,8 ziren gaelera hitz egiteko gai.

Irlandera nagusiki hitz egiten den eskualdeei Gaeltacht edo Gaeltachtaí deritze irlanderaz (pluraleko forma da *Gaeltachtaí*, eta singularrekoa *Gaeltacht*). Eskualde horietatik handiena Connemara/Conamaran dago, Galwayko konderrian, Aran uharteak barne.

Herrialdeko eskola publikoetan nahi eta nahi ez eskatzen dute irlanderaz jakitea. Horregatik, irlandar asko nolabaiteko erraztasunez hitz egiteko gai dira. Hala ere, uharte osoko erabateko hizkuntza nagusia ingelesa da. Irlanderaz idatzitako aldizkariak badira, bereziki Gaeltacht eskualdeetan. 1996an, abian jarri zuten Teilifís na Gaeilge (Irlanderazko Telebista, TG4 siglaz ezaguna). Telebista kate hori *Radio Telefís Éireann* (Irlandar Irrati Telebista, RTÉ siglaz ezaguna) konpainia publikoarena da.

Irlanderaren hizkera edo dialekto nagusiak hiru dira: Ulsterrekoa iparraldean, Munsterrekoa hegoaldean eta Connachtekoa erdi-mendebaldean. Irlandera zelta hizkuntzen barnean dago sailkaturik.

Whitley Stokes hizkuntzalariaren arabera, 1800 aldera 800.000 irlandera hiztun elebakar omen zeuden. Irlandako Gosete Handiaren amaieraldera kopurua 320.000ra jaitsi zen eta 1911 jada 17.000 irlandera hiztun elebar baina gutxiago zeuden. 1950eko hamarkadan oraindik ere irlandera hiztun elebakarrak bazeuden, baina 1980ko hamarkada eta 1990eko hamarkadan gelditzen ziren bakanak hil egin ziren. Gaur egun uste denez, Seán Ó hEinirí (1915-1998) azken irlandera hiztun elebakarra izan zen. Bizitza osoa Mayo konderriko kostaldeko Cill Ghallagáin herrian bizi izan zen.

## Eduki-taula



**Irlandako gaelera, Irlandako gaelikoa, irlandera**

An Ghaeilge — Gaeilge

0% to 2%
2% to 5%
5% to 10%
10% to 25%
25% to 45%
45% to 70%
>70%

2011ko Irlandako errolda hartuz irlanderaz mintzatzeko gai diren biztanleen kopuruaren arabera koloreztatutako mapa.

**Datu orokorrak**

| | |
|---|---|
| **Lurralde eremua** | Irlandako Errepublika eta Ipar Irlanda |
| **Hiztunak** | Zenbatespena: 380.000 dira ondo hitz egiteko gai. 130.000k dute lehen hizkuntza. |
| **Rankinga** | *Ez 100 mintzatuenen artean* |
| **Ofizialtasuna** | Irlandako Errepublika eta Europako Batasuna |
| **Eskualdea** | Gaeltacht |
| **UNESCO sailkapena** | 3 arrisku ziurran |
| **Araugilea** | Foras na Gaeilge |

**Hizkuntza familia**

hizkuntza nostratikoak
Hizkuntza euroasiarrak
Indoeuropar hizkuntzak
Zelta hizkuntzak
Uhartetar hizkuntza zeltak
Hizkuntza goidelikoak

**Informazio filologikoa**

| | |
|---|---|
| **Hizkuntza-tipologia** | aditza-subjektua-objektua, nominatibo-akusatibo hizkuntza, |

| | |
|---|---|
| | hizkuntza azentuala eta hizkuntza fusionatzailea |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa eta Ogama |
| | **Hizkuntza kodeak** |
| **ISO 639-1** | ga |
| **ISO 639-2** | gle |
| **ISO 639-3** | gle |
| **Ethnologue** | gle (http://www.ethnologue.com/language/gle) |
| **Glottolog** | iris1253 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/iris1253) |
| **Wikipedia** | ga (https://ga.wikipedia.org) |

# Hizkuntzaren izena

Euskaraz, Euskaltzaindiak hiru izen ditu onartuak hizkuntza hartarako: *Irlandako gaelera*, *Irlandako gaelikoa* eta *irlandera*. Irlandan bertan, irlanderaren izen ohikoenak *Gaeilge* (irlanderaz) eta *Irish* (ingelesez) dira.

Irlandan, denbora luzez ingelesez *Gaelic* edo *Irish Gaelic* deitu izan zaio, *Gaelic* hitza irlanderazko *Gaeilge* nahiz Eskoziako gaeliko hizkuntzako *Gàidhlig* hitzen ingelesezko aldaera baita. Halere, 1921. urtean Irlandako Estatu Askea eratu zenetik, eta bereziki 1949an Irlandako Errepublika aldarrikatu zenean, *Gaelic* izena mespretxuzko izendapen gisa jo zen, eta herrialde honetako erakunde ofizialek *Irish* izendapenaren alde egin zuten, batez ere, izendapen honek Irlandako berezko hizkuntza dela ongi zehazten baitu.



Play media

Argia aldizkariaren *Irlanderaren arazo eta erronkak* Ipar Irlandan dokumentala ikusgai (ingelesezko audioa eta euskarazko azpitituluak).

# Hizkuntzaren egoeraren bilakaera

1600. urtera arte, ingeles hiztunak gutxiengoa ziren Irlandako uhartean. 1830. urtean milioiren bat gaelera hiztun zeuden, hauek elebakarrak ziren, hau da irlanderaz edo gaeleraz bakarrik hitz egiten zekiten. Aldiz, elebidunak edo bi hizkuntza hitz egiteko gai zirenak (irlandera eta ingelesa) hiru milioi pertsona ziren. 1841. urtean hizkuntzaren gainbehera latza izan zen, irlandera edo gaeleraren hiztun kopurua lau milioian zegoen, baina Gosete Handia eta Irlandar Emigrazio mugimendu handiaren ondoren, 1851. urterako irlanderaren hiztunen kopurua 1,7 milioira jaitsi zen. 1881erako 64.167 pertsona besterik ez zeuden elebakarrak edo irlanderaz bakarrik hitz egiten zutenak, 1891. urterako elebakarren kopurua 38.193ra jaitsi zen eta 1901erako 20.953 elebakar irlandar zeuden, zeinetatik 12.000 Connacht eskualdean zeuden.

Gaeleraren edo irlanderaren hiztunak, guztira (elebakar eta elebidun guztiak barne hartuta), 1841ean lau milioi ziren; 1851rako, 1,7 milioira gutxitu ziren; 1901ean, 641.142 hiztunera; 1911n, 527.000ra. 1911n irlandarren % 18 zen elebiduna, baina datu hori ez da erabat fidagarria. 1925ean irlandarren % 12k esaten zuen gaeleraz hitz egiteko gai zela. 1926an gaeleraren hiztunak 542.511 ziren, hau da, Hego Irlandako biztanleen % 18,3; 1936an, berriz, gaeleraren hiztunak 666.601 ziren.



Gaur egungo gaelera hiztunen ehunekoak, konderriz konderri; 2007.

1956an Gaeltacht edo hizkuntz gune linguistikoen sistema bat ezarri zen irlanderaz edo gaeleraz modu naturalean hitz egiten zen lurraldeetan (Irlandaren mendebaldean gehienbat). Gainera, 25.000 ijito irlandar ere badaude *shelta* hitz egiten dutenak (*tinkers* "latorrilariak" izendapen hau mespretxuzkotzat jotzen da, edota politikoki zuzenagotzat jotzen den *travellers* "bidaiariak" deitzen zaie), hori irlandera edo gaeleran oinarrituta dagoen ijitoen argota da eta 10.000 pertsona baino gehiagok Britainia Handian eta Estatu Batuetan hitz egiten dute.

1981ean irlandarren % 30 gaeleraz hitz egiteko gai dela kalkulatzen da. 1984an, berriz, O'Reagain eta O'Gliasain adituek kopuru hori % 5era murrizten zuten (60.000 hiztun, horietatik 10.000 eguneroko hiztunak).

## Hizkuntza babesten duten erakundeak

Irlandak bere hizkuntza zaindu eta babesten dituzten erakundeak ditu. 1943an *Comdhala Naisiunta na Gaeilge* (Gaeleraren Kontseilu Nazionala) sortu zen, irlandar hizkuntza bultzatzen zuten 17 erakundez osatuta zegoen, zeinek diru laguntzen bidez lan egiten zuten. Beste erakunde esanguratsu batzuk hauek dira:

- ***Conradh na Gaeilge*** («Gaeldar Liga» edo «Liga Gaelikoa»), 1893an sortua, erakunde handi eta zaharrena, 200 kide ditu uharte osoan zehar.
- ***Gael Scoileanna*** («Eskola Gaelikoen Elkartea»), Gaelscoil deitzen diren lehen eta bigarren mailako hezkuntza gaelera hutsean irakasten duten ikastetxeek osatzen dute.
- ***Comhar na Muinteori Ghaelachta*** («Gaelerazko Irakasleen Elkartea»), eraketa korporatibo edo sindikaleko irakasle elkarte bat da.
- ***An Combchoiste Reamb Scolaiochta*** («Eskolaurreko Koordinakunde Batzorde Zentrala») naionrai-ak koordinatzen dituen erakundea da.



Irlanderaz idatzitako **Dhún na nGall** edo (**Donegal** Konderriko bide seinalea

Gael Linn, 1953an sortutako erakundea, eraketa ekonomikoa duen elkarte bat da. Kirol apustuen sistema baten bidez lortutako diru laguntzekin, gaelera ikastea bultzatzen du.

1980an *Údarás na Gaeltachta* («Gaeltachteko Agintea») erakundea sortu zen, gune irlandar hiztunen garapen industriala bultzatzeko asmoa zuen elkartea. Haren agintepean 4.500 gizabanako, 150 enpresa eta 500 lantegi daude. 1982an hizkuntzaren egoera kaxkarra zela eta *Bord na Gaeilge* («Gaeleraren Bulegoa») erakundea sortu zen, 1983-1986 urte bitartean, hirigunetan irlandar hizkuntza gune bereziak sortzeko ekintza plan bat burutzeko asmoz, eta honek RTE gaeleraz emisio ordu gehiago, irakasle eta ikasle berrien gaelerazko heziketa eta *Dail* eta *Seanad*ean gaelerazko hitzaldi gehiago egiteko proposamenak barne hartzen zituen. Azken erakunde honek *Comdhala Naisiunta na Gaeilge* («Gaeleraren Kontseilu Nazionala») erakundearekin elkarlana egingo zuen Gaeltacht eremuko ekonomia bultzatzearren, bertako biztanleek hizkuntza alde batetara ez uzteko eta kanpora emigratu ez zezaten. Era berean, Irlandako Gobernuko Gaelthachteko Ministerioak (*Roin na Gaelthachta*) Bord eta Udaras erakundeen arteko harremanak koordinatzen ditu, estatuaren diru laguntzak banatzeko eta erakunde pribatuekin elkarlanean aritzeko. Glor na gael ospakizuna ere bultzatzen da, irlanderaz edo gaeleraz eginiko herri eta auzoen arteko lehiaketa, Euskal Jaien edo Euskal Lore Jokoen antzekoa, auzokidetasuna eta herrikidetasuna bultzatzeko helburuz.

## Gaeltacht: gaelera hiztunen lurraldeak

*Sakontzeko, irakurri: «Gaeltacht»*

**Gaeltacht** (*Gaeltachtaí* pluralez) hitza biztanleriaren gehiengoa irlandera edo gaelera hiztunek osatzen dituzten lurraldeentzako erabiltzen da. Irlandan, ***The Gaeltacht*** edo ***An Ghaeltacht*** delakoa "ofizialki" irlandera hizkuntz nagusia den eremui ipintzen zaien izena da, hau da, bertakoen ama hizkuntza irlandera denean. Lurralde hauek Irlandako Estatu Askea sortu zen lehendabiziko urteetan izendatuak izan ziren, Berpizkunde Gaelikoaren ondoren, gobernuaren irlandar hizkuntzaren berrezartze politika moduan.

Lurralde hauek oso txikiak dira uharte osoaren azalera guztiarekin parekatuz gero, ofizialki 1950. hamarkadan zehaztu ziren eta aldakuntza gutxi izan dituzte, nahiz eta ordudanik gaeleraren hiztun kopurua zer edo zer jaitsi. Teorian, *Gaeltacht* eremu diren askotan gaelera hiztunen kopurua gutxiengoa da.

Gaur egungo *Gaeltacht* eremuetako biztanleria 85.000 pertsonakoa da gutxi gorabehera, hiztun kontzentrazio handienak sartalde edo mendebaldeko konderrietan dago, batez ere, Donegal, Mayo, Galway, Kerry eta Cork-en. Bi hiztun eremu txiki ere badaude Meath-en, ekialdean, eta Waterford-en, hegoaldean. Meath-eko Gaeltacht-aren egoera bitxia arrazoi honegatik da: 1930eko hamarkadan Irlandar Gobernuak etxe bat eta 22 akre lur eskainia zizkien Connemara eta Mayoko 41 familiari beren jatorrizko lurren ordez. Meath-eko eremu hau 1967.urtera arte ez zen *Gaeltacht* izendatu.

*Minister for Community, Rural & Gaeltacht Affairs* delakoaren agintepean dagoen *Department of Community, Rural & Gaeltacht Affairs*-ek *Gaeltacht*-en inguruko irlandar politikaz arduratzen da eta *Údarás na Gaeltachta* (gaelera arautzen duren erakundea) eta beste erakundeen lana gainbegiratzen du.

RTÉren *Raidió na Gaeltachta* gaelerazko irratiak emititzen du *Gaeltacht* lurraldeentzat eta oro har, irlandar hiztun entzule guztientzat. TG4 irlandar telebista kateak gaeleraren erabilera bultzatzen du, bere egoitza Galwayko konderrian du.

2005. urteko martxoan, Irlandako Gaeltacht-eko Ministraria den Éamon Ó Cuív-ek Gaeltacht eremuetako trafiko seinaleak gaelera hutsean ezarriko zituzten aurre-iragarpena egin zuen. Irlandan, *Gaeltacht* eremukoak ez diren udalerrien inguruko seinaleak (norabidekoak, ongietorrikoak…) elebidunak dira, zeinek ingelesezko izena hizki handiz duten, eta gainaldean irlanderazko izena duten hizki txikiz eta kurtsibaz. *Gaeltacht*-eko eremuko udalerrietan berriz, seinaleak irlandera hutsean daude.

Irlandak Europar Batasuneko Estatuekin hainbat negoziaketa izan ondoren, irlandera edo gaelera Batasuneko hizkuntza ofizialetako bat izan zedin lortu zuen. Ofizialtasun hori 2007ko urtarrilaren 1ean sartu zen indarrean, baina derogazio batekin.




Gaeltacht eremuak orlegiz adierazita.

## Historia

Irlandera Erdialdeko Irlanderatik dator (Erdi Aroan hitz egiten zena). Horren aurretik Irlandera Zaharra (VI. eta X. mendeen artean) eta Aitzinirlandera (IV. eta VII. edo VIII. mendeen artean) erabiltzen ziren.

Erdialdeko Irlandera hiru hizkuntzatan banatu zen: Aipatu Irlandera, Eskoziako Gaelera eta Manxera.

Irlanderaren historia garaikideko zenbait datu:

- 1843an Thomas Davisek gaelera «hizkuntza nazional»tzat aldarrikatu zuen, horrelakorik gertatzen zen lehen aldia.
- 1893an *Conradh na Gaeilge* («Irlanderaren Liga») fundatu zuten Douglas Hyde-k, Eoin Mac Néill-ek, Father Eugene O'Growney-k eta beste hainbatek.
- 1972an ekin zion emititzeari *Raidió na Gaeltachta* nazio mailako irratiak.
- 1993an hasi zen emititzen *Raidió na Life* irrati dublindarra.
- 1996an lehen emisioak egin zituen TG4 telebistak.
- 1999ko abenduaren 2an Foras na Gaeilge erakundea sortu zuten.
- 2003ko uztailaren 14an *The Official Languages Act 2003* legea onartu zuten, hizkuntza sustatzeko.
- 2007ko urtarrilaren 1ean Europar Batasunaren hizkuntza ofiziala bihurtu zen beste hainbesterekin batera.




Irlandera hizkuntzaren egoera 1871. urtean. Gorriz, jendearen gehiengoak irlanderaz hitz egiten zuen lurraldea (gaur egungo Gaeltacht delakoa) eta zuriz, ia osoki edo osoki ingelesez hitz egiten zen lurraldea.

## Dialektoak

Irlanderak dialekto asko dauzka. Halere, nagusiki, hiru gune dialektiko nagusi bereizi ditzazkegu. Hauek, Munster, Connacht eta Ulster lurraldeekin bat egiten dute gutxi gorabehera.

Irlanderaren dialektoen arteko ezberdintasunak nabarmenak dira. Ondorioz, irlandar batu edo estandard bat sortzeko unean hainbat oztopo gainditu behar izan ziren. Esaldi batek dialektoaren arabera aldaera ugari izan ditzake. Adibidez, «Zer moduz?» esaldia eredutzat hartuz gero:

- Ulster: *Cad é mar atá tú?* (literalki «Nola zaude zu?»)
- Connacht: *Cén chaoi a bhfuil tú?*
- Munster: *Conas taoi?* edo *Conas tánn tú?*
- Irlandera batua: *Conas atá tú?*

Berriki, ordea, dialektoetako hiztunen arteko kontaktuak ohikoagoak egin dira, eta dialekto mistoak sortu dira. Hala ere, dialekto hiztun askok (bereziki Ulsterren) nahiago dute euren hizkuntzaren aldaera beste dialekto batzuen eraginetik babestu. Tokian tokiko dialektoak gaeliko hiztun berriei irakasten zaizkie, eta hauek imitatu egiten dituzte.

### Munsterreko dialektoa

Munsterreko dialektoa Kerry, Muskerry, Clear Lurmuturrean eta Cork konderriaren mendebaldean hitz egiten da, baita Dungarvaneko zati txiki batean ere, Waterford-eko konderrian. Dialekto horren azpibanaketa nagusia Decies-eko irlandera (Waterford hitz egiten dena) eta gainontzekoen artean dago.

Munsterreko irlanderaren ezaugarri nagusiak hauek dira:

1. Bukaera pertsonalen erabilera izenordeen ordez, honela euskarazko «nik egin behar», Munsterren *caithfead* da, eta beste dialekto batzuetan *caithfidh mé* erabiltzea nahiago dute (irlanderako *mé* euskaraz «ni» da). Euskarazko «ni nintzen eta zu zinen», irlanderaz *Bhíos agus bhís* da Munsterren eta *Bhí mé agus bhí tú* beste dialekto batzutean.
2. Sudurkariak eta *ll*-aren bitartez, zenbait bokal laburtu egiten dira eta beste batzuk diptongo bilakatu.
3. Esaldia kopulatibo moduan osatzen da aldi askotan *is ea*-arekin.

### Connachteko dialektoa

Connachteko dialekto garrantzitsuena Connemara/Conamara eta Aran uharteetakoa da. Zenbait ezaugarritan, dialekto hau Connachteko beste dialektoetatik oso ezberdina da. Connachteko dialekto asko XIX. mendean desagertu zirela kontutan hartu behar da. Honela, Connemarako irlandera Connachteko irlandar dialekto orokortzat hartzen da, nahiz eta hau garai batean Connachten zeuden askotariko bat besterik ez izan. Ohikoa zen Connachteko dialektoaren antzekoagoa da Galway eta Mayoko mugan hitz egiten den dialektoa, nahiz eta gaur egun desagertzeko arrisku handian egon. Tourmakeadyko irlandera, Mayo hegoaldekoa eta Joyceen Herrialdekoa (hiruak Galway eta Mayoren artean) izan ohi dira erdi aroko irlanderaren gaur egun bizirik dirauten dialekto antzekoentzat hartuak. Mayoren iparraldeko dialektoak ere Errisen eta Achill uhartean, gramatikalki eta morfologikoki Connachteko dialektotzat hartu daitezke, nahiz eta Ulsterreko irlanderarekin lotura lexikala ere eduki, Ulsterretik ingelesek bota eta Connachten bizitzen jarri zituzten ulstertar gaeleradun immigrante ugariei esker.

Connemarako irlandera oso ospetsua da ikasleen artean, batez ere Mícheál Ó Siadhailen auto-ikasketa gidei esker. Halere, baditu zenbait elementu molde ofizialetik at geratzen direnak, zehazki -achan amaitzen diren aditzen izenak, adibidez *lagachan* aditzaren erabilera *lagú* aditzaren ordez, euskaraz «ahuldura» esanahi du. Molderik gabeko ahoskera du, bokal luzeez eta bukaera oso motzez, eta horrek Connemarako irlanderari ezaugarri berezi bat ematen dio.

Dialekto honen ezaugarri nabarmena *bh* hizkiaren *w* ahoskeran dago, beste dialektoetako *v* ebaki beharrean, herrialdeko beste leku batzuetan bezala. Adibidez, *Ní raibh* hitzak «Ni raow» ahoskatzen dira Connachten eta «Ni rev» gainontzeko lurraldeetan. Gainera, Connachteko hiztunek «nós» izenordea jartzen dute aditzaren ondoren, aditzarekin berarekin jarri ordez. Adibidez, "Bhí muid" euskaraz «Gu gara», ohikoa den *Bhíomar* esan beharrean. Irlanderazko edozein eskolatan irakasten diren esaldi osaketak baino errazagoa da Connemarako dialektokoa «Gu» modua erabiltzerako garaian.

Connachteko irlandera da Irlandako dialekto guztietan hedatuena, irlanderaren hiztunen gehiengoa handik baitator.

### Ulstergo dialektoa

Gaur egungo Ulstergo dialektorik garrantzitsuena Rosses eskualdekoa da, eta Séamus Ó Grianna eta Seosamh Mac Grianna idazleek , besteak beste, asko erabiltzen dute. Funtsean Gweedorekoaren berdina da, azken eskualde hau Enya abeslariaren eta Clannad taldearen sorlekua da.

Ulstergo dialektoa gainontzeko Irlandako Errepublikako dialektoetatik oso ezberdina da eta Eskoziako gaelerarekin antzekotasun nabariak ditu. Berezko hitzak ditu bai eta esanahien lits ugari ere. Horregatik Ipar Irlandako irlanderaren dialektoen gainbehera dela eta, Ulstergo dialektoa Eskoziako gaelera eta hego eta mendebaldeko dialektoen zubi gisako dialekto gisa hartzea neurriz gainekoa izango litzateke. Izan ere, Eskoziako gaelerak Ulstergo dialektoan agertzen ez diren ñabardura asko ditu, eta aldiz, ñabardura hauek Munstergo dialektoan agertzen dira.

Ulstergo ezaugarri oso nabari bat *cha(n)* ezezko partikularen erabilera da, aldiz Munster eta Connaughten *ní* erabiltzen da. Era berean, Ulstergo *cha(n)* partikulak, Eskoziako gaeleran hain ohikoa, ekialdeko dialektoetako *ní* partikula ordezkatzen du (aldiz Ipar Irlandako desagertuak dauden dialektoek *ní* partikulua erabili ohi zuten). Praktikan, dirudienez, *cha(n)* partikula baieztatze bati erantzuteko, ezezko baieztatze bat berresteko (*Níl aon mhaith ann – Chan fhuil, leoga* = "Ez da ona" – "Ziur ez dela ona") edota baieztatze bat ukatzeko erabili ohi da (*Tá sé go maith - Chan fhuil!* = "Ona da" – "Ez, ez da ona!"); aldiz, *ní* partikula galdera bati erantzuteko erabili ohi da (*An bhfuil aon mhaith ann? – Níl* = "Ona al da?" – "Ez").

## Hiztegia

### Izenorde pertsonalak

- *mé* /mʲeː/: ni,
- *tú* /t̪ˠuː/: zu/hi,
- sé /ɕeː/: bera/hura (gizonezkoentzat),
- sí /ɕiː/: bera/hura (emakumeentzat),
- *muid*/*sinn* /ɕɪnʲ/: gu,

- *sibh* /ɕɪvʲ/: zuek,
- *siad* /ɕiəd̪ˠ/: haiek.

## Izenak

- *lá* (m) /ɫ̪a:/: egun,
- *bean* (f) /bʲan̪ˠ/: emakume,
- *grian* (f) /gɾʲiən̪ˠ/: eguzki,
- *tír* (f) /tʲiːɾʲ/: lur, herrialde,
- *fear* (m) /fʲaɾˠ/: gizon,
- *Éireannach* (m) /'e:ɾʲan̪ˠəx/: Irlandar,
- *oíche* (f) /ˈiːhə/: gau,
- *cathair* (f) /'kahəɾʲ/: hiri

## Zenbakiak

- *A h-aon* ("A jen"): Bat
- *A dó* ("A do"): Bi
- *A trí* ("A tri"): Hiru
- *A ceathair* ("A kajer"): Lau
- *A cúig* ("A kuig"): Bost
- *A sé* ("A xe"): Sei
- *A seacht* ("A xajt"): Zazpi
- *A hocht* ("A jojt"): Zortzi
- *A naoi* ("A nei"): Bederatzi
- *A deich* ("A dej"): Hamar

## Esaldiak

### Agurrak

- ***Dia dhuit*** /dʲiə ɣɪtʲ/: "Kaixo" (pertsona bakarrekin topo egitean), literalki: "Jainkoa zurekin".
- ***Dia's Muire duit***: Norbaitek kaixo esatean erantzuteko formula (pertsona bakarrari), literalki: "Jainkoa ta Maria zurekin".
- ***Dia daoibh***: "Kaixo" (pertsona bat baino gehiagorekin topo egitean), literalki: "Jainkoa zuekin".
- ***Dia's Muire daoibh***: Norbaitek kaiso esatean erantzuteko formula (pertsona bat baino gehiagori), literalki: "Jainkoa ta Maria zuekin".
- ***Slán leat/slán agat*** /sˠɫ̪a:n̪ˠ lʲat̪ˠ/ o sˠɫ̪a:n̪ˠ əgat̪ˠ/ "Agur", aurrenekoa gelditzen denak esaten du, bigarrena, joaten denak (literalki: "Agurrak zurekin/Agurrak zugan").
- ***Slán agaibh***: "Agur" (pertsona bat baino gehiagori agurtzeko).
- ***Slán libh***: "Agur" (pertsona askori agur esateko).
- ***Slán go fóill***: "Gero arte".
- ***Slán tamall***: "Laster arte" (denbora gutxira ikusiko duzun norbait agurtzeko).
- ***Slán abhaile!***: "Bidai on etxera!"
- ***Tabhair aire***: "Zaindu".
- ***Tá áthas orm bualadh leat***: "Pozten naiz ezagutzeaz", "Urte askotarako".

### Auzkezpenak

- ***Fáilte***: "Ongietorri".
- ***Conas atá tú?*** /'kɔn̪ˠəsˠ ət̪ˠa: t̪ˠu:/: "Zer moduz?".
- ***Cén chaoi a bhfuil tú?***: "Zer moduz?"
- ***Cad é mar atá tu?***: "Zer moduz?"
- ***Tá mé go maith*** /t̪ˠa: mʲe: gɔ mˠa/: "Ongi nago".

- ***Tá mé ceart go leor***: "Ondo nago".
- ***Tá mé go breá***: "Ederki nago".
- ***Tá mé go h-iontach***: "Zoragarri nago".
- ***Tá mé go dona***: "Gaizki nago".
- ***Agus tú féinn?***: "Eta zu (zer moduz zaude)?", literalki "Eta zu zeu?", norbaitek "zer moduz zaude?" galdetzean erantzuten formula.
- ***Tá mé tinn***: "Gaixo nago".
- ***Cén scéal?***: "Zer berri?".
- ***Is mise***: "Ni naiz", adibidez: ***Is mise Brian***: "Ni Brian naiz"
- ***Cén t-ainm atá ort?***: "Nola izena duzu?"
- ***Cén t-ainm atá ortsa?***: "Zein da zure izena?"

#### Bestelakoak

- ***Go raibh maith agat*** /gɔ ɾˠɛvʲ 'mahəgatˠ̪/: Eskerrik asko (literaki: "Ongia zurekin izan dezazula" edo "Ongia zugan egon dadila").
- ***Le do thoil***: "Mesedez".
- ***Gabh mo leithscéal*** /Gavˠ mˠɔ lʲɛ'ɕceːɫ̪/: "Barkatu" (literalki: "Jaso itzazu nire barkamenak").
- ***Tá brón orm***: "Sentitzen dut" (barkamena eskatzeko).
- ***An bhfuil Gaeilge agat?***: "Irlanderaz mintzatzen al zara?".
- ***Conas a déarfávsin as Gaeilge?***: "Nola esaten da hori Irlanderaz?".

#### Hitzak

- ***Agus***: "Eta/Ta"
- ***Féin***: "Neu/Zeu/Geu/Zeuek...", ingelesezko "self" hitzarekin parekidea = ***Sinn Féin***: "Gu geu", ***Tú féin***: "Zu zeu"

### Testuak

| **Mise Éire** – Irlanderaz | **Irlanda Naiz** – Euskaraz |
|---|---|
| *Mise Éire – sine me ná an Chailleach Béarra.* | Irlanda naiz – Bearako Atsoa baino zaharragoa naiz. |
| *Mór mo Ghlóir – mé do rug Cú Chulainn cróga.* | Handia da nire Loria – Cúchulainn handiari titia eman nion. |
| *Mór mo náire – mo chlan féin do dhíol a máthair.* | Handia da nire lotsa – neure semeek ama saldu dute. |
| *Mise Éire – uaigní me ná an Chailleach Béarra.* | Irlanda naiz – Bearako Atsoa baino bakartiago nago. |

## Esaera zaharrak

- Gaelerazko hitzak eta esaldiak

## Hezkuntza

- Gaelscoil

## Literatura

- Cathal O Searcaigh (1956-).

## Musika

- Clannad taldea.

## Hedabideak

- **Telebistak**: TG4.

- **Irratiak**:
  - Raidió na Gaeltachta.
  - Raidió na Life (Dublin).
- **Egunkariak**:
  - "La" (2008ko abenduan desagertua).
  - "Foinse".
- **Aldizkari** elektronikoak:
  - "Gaelport".
  - "Beo".

## Erreferentziak


1. ↑ a b *53. araua: Munduko estatuetako hizkuntza ofizialak.* (https://www.euskaltzaindia.eus/dok/arauak/Araua_0053.pdf) Euskaltzaindia . Noiz kontsultatua: 2010-12-23.
2. ↑ a b *38. araua: Munduko estatu-izenak, herritarren izenak, hizkuntza ofizialak eta hiriburuak.* (https://www.euskaltzaindia.eus/dok/arauak/Araua_0038.pdf) Euskaltzaindia . Noiz kontsultatua: 2010-12-23.
3. ↑ Euskaltzaindia: *Hiztegi Batua* (http://www.euskaltzaindia.net/hiztegibatua).
4. ↑ Keith Brown, argitaratzailea (2005): *Encyclopedia of Language and Linguistics* (2. argitaraldia). Elsevier. ISBN 0-08-044299-4


## Ikus, gainera

- Eskoziako gaelera
- Manxera
- Europako hizkuntza gutxituak

## Kanpo estekak


Euskarazko Wikipedian bada atari bat, gai hau duena: **Irlandako Ataria**


Hizkuntza honek bere Wikipedia du: Bisita ezazu.

- **(Gaeleraz) (Ingelesez)** Foras na Gailge-ren webgunea (http://www.gaeilge.ie/)
- **(Gaeleraz)** An Coimisinéir Teanga erakundearen webgunea (http://www.coimisineir.ie/)
- **(Gaeleraz) (Ingelesez)** Gaeltachteko webgunea (http://www.pobail.ie/)
- **(Gaeleraz) (Ingelesez)** Raidió na Gaeltachta irratiaren webgunea (http://www.rte.ie/rnag/)
- **(Gaeleraz)** Raidió na Life irratiaren webgunea (http://www.rnl106.com)
- **(Gaeleraz)** Gaelerazko Telebistako webgunea (http://www.tg4.ie/)
- **(Gaeleraz)** La egunkariaren webgunea (http://www.nuacht.com)
- **(Gaeleraz)** Foinse astekariaren webgunea (http://www.foinse.ie/)
- **(Gaeleraz)** Gaelport aldizkari elektronikoaren webgunea (http://www.gaelport.com)
- **(Gaeleraz)** Beo aldizkari elektronikoaren webgunea (http://www.beo.ie)
- **(Gaeleraz)** Gaeilge ar an Ghréasán webgunea (http://www.smo.uhi.ac.uk/gaeilge/gaeilge.html)
- **(Gaeleraz) (Ingelesez)** Litriocht webgunea (http://www.litriocht.com)
- **(Gaeleraz) (Ingelesez)** Oideas Gael webgunea (http://www.oideas-gael.com)
- **(Ingelesez)** Gaeleraren egoera eta erronkez bideoa Pobaleko buruarekin euskarazko azpitituluekin Argian (http://www.argia.com/bideoak/?ikusi=176)
- Gaelikoa, etorkizuneko ibilbidea marrazten. Zuzeu.com (http://zuzeu.com/2011/05/02/gaelikoa-etorkizuneko-ibilbidea-marrazten/)
- "Irlandara. Haren historia eta gaur egungo estatua" (http://klasikoak.armiarma.com/idazlanak/M/MirandeArtikuluak003.htm), Jon Miranderen artikulua "Euzko Gogoa" aldizkarian (1954, 11-12. zenbakiak). Klasikoen gordailua

| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q9142 · Multimedia: Irish language (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Irish_language) |
|---|---|
| | **Identifikadoreak** · GND: 4120207-7 (https://d-nb.info/gnd/4120207-7) · LCCN: sh85068101 (https://id.loc.gov/authorities/sh85068101) · NDL: 00560113 (https://id.ndl.go.jp/auth/ndlna/00560113) · |

AAT: 300388467 (https://www.getty.edu/vow/AATFullDisplay?find=&logic=AND&note=&subjectid=300388467) ·
**Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/Irish-language)

**Gaeltacht eremuko udalerri, herri eta kokalekuak**

- **Contae Dhún na nGall**
  - Na Rosa: Anagaire • Árainn Mhór • An Dúchoraidh • An Clochán Liath • Leitir Mhic an Bhaird • Ailt an Chorráin • Oileán na Cruite • Cionn Caslach • Loch an Iúir • Rann na Feirste •
  - Gaoth Dobhair: An Bun Beag • Doirí Beaga • Croithlí • Gabhla
  - An Láir: Baile na Finne • Gleann Cholm Cille • Carraig Airt • Na Dúnaibh • Cill Charthaigh • Teileann
  - Cloch Cheann Fhaola: Gort an Choirce • An Fál Carrach • Machaire Rabhartaigh • Toraigh
- **Contae Mhaigh Eo**
  **Gaeltacht Iorrais agus Acaill**
  - Iorras: Eachléim • Béal Deirg • Béal an Mhuirthead • Ceathrú Thaidhg • Gleann an Ghad • Ros Dumhach
  - Acaill: Gob an Choire • Bun an Churraigh • Dún Ibhir • Dumha Éige • An Caiseal • Sáile • Tóin re Gaoth
  - Conamara: Tuar Mhic Éadaigh
- **Contae na Gaillimhe**
  - Cois Fharraige: Bearna • Na Forbacha • An Spidéal • Indreabhán
  - Conamara Theas: Ros an Mhíl • Casla • An Cheathrú Rua • Camus • Ros Muc • Béal an Daingin • Leitir Móir • An Fhairche • Corr na Móna • Baile an Chláir • Baile na hAbhann
  - Oileáin Árann: Inis Oírr • Inis Meáin • Inis Mór • Cill Rónáin • Leitir Mealláin • Maigh Cuilinn
  - Gaillimhe: Chathair na Gaillimhe
- **Contae Ciarraí**
  - Corca Dhuibhne: Lios Póil • Dún Chaoin • Baile na nGall • An Clochán • Baile an Fheirtéaraigh • Cé Bhréannain • An Daingean • Feothanach • Ceann Trá
  - Ui Rathach: Baile an Sceilg • Cathair Dónall
- **Contae Chorcaí**
  - Múscraí: Béal Átha an Ghaorthaidh • Baile Mhic Íre • Baile Bhuirne • Cúil Aodha • Cill na Martra
  - Oileán Chléire: Oileán Chléire
- **Contae Port Láirge**
  - Gaeltacht na nDéise: An Rinn • An tSean Phobail
- **Contae An Mhí**: Baile Ghib • Ráth Cairn
- **Izendapena jasotzeko hautagaiak**: An Cheathrú Gaeltachta • Bóthar Seoighe • Oileán Chliara • Gaeltacht Bhaile na hÉireann • Bhéal Feirste • Baile Munna



